# CARNAVAL DE 1907

Comparsa de Iñudes organizada por las Sociedades Euskal-Billera y Sporti-Clai.

## AURZAYAK

Donostiyako plazan
gaur aurren festa da,
eta etorri gera
aurzayak festara;
goiz goizetik ditugu
aurrak apain para,
gueren oyekin irten
gaitezen plazara.

—

Negarrez ezdaquiten
gure aur laztanak,
plazan chertatu ditu
gaur mediku jaunak;
ongi ditubelako
egin bere lanak,
pozez dantzatu biar
degu aurzai danak.

—

Geldirik nola gaude
soñuba asita,
guazen dantzara denok
aurrak lo utzita;
aldi charrik badute
guk jarrik etzinta
mendikubak egingo
diote bizita.



## ARZAYAK

Ardiyak utzirikan
gatoz gu menditik,
iñude gazte abek
ikustiagatik;
aiñ egokiyak dira
aiñ politak guztik,
penaz beterik joango
gera Donostitik.

—

Zer mirabe ederrak
tente ta gordiñak,
dirudite moldian
dirala egiñak;
oyen pauso pizkor ta
aiñ arpegi fiñak.....
¡ez dira iñudiak
baizik imajiñak!

—

Neurriz diyotenian
dantzari ekiten,
gorputzan diyote
pozez eragiten;
eta guk ikusirik
lan oyek egiten
odola pill pill jartzen
zaigu arakiten.

# FESTARÁ

Festarik bear bada
Bego Donostiya;
Betikoa du fama
Ondo mereziya:
Bestetan ez bezela
Emen gazteriya
Amaren sabaletik
Dator ikasiya.

Imp. Baroja—San Sebastián